# SANTIAGO APOSTOLUAREN EGUNA

## Sarrerako oharra

Anai-arrebok: gaur, Santiago apostoluaren eguna ospatzen dogu.

Munduko hainbat herritan, Santiago sinistedun eredugarri da eta antxinatik debozino handia deutse Jesukristoren jarraitzaile lez.

Santiago apostoluaren bidea ez zan ibilpide turistikoa izan, erromesen bidea baino, hau da, Jesus bere Maisu eta Jaunak edan eban kopa beretik edatea gura dabenen bidea.

Sentimentu pozgarri honegaz emongo deutsagu hasierea ospakizunari. Zutunik, abestuz hasiko gara.

## Sarrerako abestia

## Abadearen agurra

**Santiago Apostoluak bere hitzez eta martiritzaz iragarri eban Jesukristo gure Jauna, zuekin.**

## Damu otoitza

**Isiltasuna eginez, eukaristia hau ospatzeko prestatuko gara.**

— Aitagana daroan bidea zarana: Erruki, Jauna.

— Herrietan argi egiten dauan egia zarana: Kristo, erruki.

— Mundua barritzen dauan bizia zarana: Erruki, Jauna.

## Oharra irakurgaiei

Santiagoren martiritza aurkezten deusku Jaungoikoaren hitzak lehenengo irakurgaian.

Kristoren ikaslea, egiaren lekukoa da eta prest egon behar dau beti Jaungoikoaren esana egiteko, ez gizon-emakumeena.

Berak, bere gorputzean jasaten dituala nekaldiaren seinaleak dinosku Paulo Jesus Jaunaren ikasleak.

Apostoluak uste osoa dau bere Semea hilen artetik biztu eban Jaungoikoagan eta egunen batean bera be berbiztuko dauala sinisten dau.

## Jaungoikoaren herriaren otoitza

**Gure eta erromes guztien zaindaria dan Santiago bitarteko dogula, eskatu daigun gizadiaren beharrizan guztien alde.**

1.- Eleizearen alde. Ebanjelizazinoan dihardueneen lekukotasunak, Jaungoikoaren graziaz, fedea ausardiaz iragartera eroan gaizala. Eskatu deiogun Jaunari.

2.- Gurasoen eta hezitzaileen alde. Ume eta gazteak giza eta kristau balioetan hezi daiezala, zailtasunen aurrean etsi barik. Eskatu deiogun Jaunari.

3.- Agintarien alde. Euren erabagiak guztion ona lortzeko izan daitezan eta gizon-emakume guztien, batez be baztertu eta behartsuen eskubideak errespetatu daiezan. Eskatu deiogun Jaunari.

4.- Gu guztion, gure kristau alkarteen, gure familien, jaietan dagozan herrien eta Santiago-bidea egiten dihardueneen alde. Apaltasunez eta alkarri harrera eginez eta elkar errespetatuz bizi gaitezan. Eskatu deiogun Jaunari.

**Aita, entzun Santiogo apostoluaren egunean egiten deutsugun otoitz hau eta isuri gure gainera zure ontasunaren doeak. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.**

## Abadearen agurra (bedeinkapenaren ostean)

**Besteen aurrean, gure egintzen bidez, Jesukristoren heriotza eta berbizkundearen lekukotasun argia emoteko ordua da. Horretarako bildur guztiak gainditu behar doguz. Santiago egun ona izan!**

**Zoaze Jaunaren bakean!**

## Egun honetarako gogoeta

Aparteko egunak, egun esanguratsuak izaten dira gizon-emakume bakoitzaren bizitzan. Kristau Alkartean be, berezitasuna adierazten daben arrazoiak izaten dira. Holakoa dogu gaurko egun hau. Santiago apostoluaren eguna da. Jesusen gertuenetakoa izan zan.

Maitekiro zaindu eban Jesusek bere taldea: Erreinuaren egitasmoa berenganatuko eban alkartea egin gura izan eban eurekin. Hau da: gizon hareek bere asmo berberak izan eiezala gura izan eban, Jainkoaren aldetik

Berak eskeintzen deutsen behin betiko proposamenagaz maitemindu eitezala. Makalak ziranez, bere Espirituaren doea eta indarra eskaintzen deutsez.

Santiago izan zan Jesusi jarraitzea lehenengo izenpetuko ebana, odola isuriaz izenpetu bere; azkeneraino izan zan lekuko zintzoa. Gero egin eben taldeko beste guztiek; historian zehar, asko izan dira Jesusen bide berbera jarraitu dabenak, euren burua guztiz eskaintzeraino.

Egun polita da, bada, gaurkoa, gure fedearen eta Jesusi jarraitzearen sakontasunari eta osotasunari buruz geure buruari itauntzeko. Barriro be, deia dogu. “Zirikatzen“ eta merezidu dabenen arteko deia. Adoretuko ete gara, bada?